*hausnartzekorik; edo sinismen hori elikatzeko, beharrezko dogula ospatzea, alkarbanantzea, jaunartzea eta pobretasunean bizi izatea ere ez dogu uste…*

Eta, behar bada, Elizearen zoriak ez gaitu kezkatu ere egiten, ez dogulako gure sinismenaren altzo eta euskarri ikusten. Ez ete da, gero, gure sinismena *kontsumo-iturri* bat, gure seme-alabengan ezelango eraginik ez daukana, geugan ere *ezkutuko* eta *autortu-ezineko* eraginen bat baino ez daualako? Ona litzateke hautsok astintzea Santiagoren apostolutza ospatzean.





# SANTIXA, garagarrilaren 25ean



# ELIZ ALKARTEAREN ELIZKIZUNA

*(Gurejauna banatzeko, hartu Hostia bat atzamar artean, erakutsi eliztarrei eta iragarri...):*

† Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana: zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak.

*—Jauna, ni ez naz inor zu nire etxean sartzeko, baina esaizu hitz bat eta osatuko naz*.

**Jaunartzerako abestia**

**Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

—Neu naz zerutik lurrera jatsi dan ogia
Aitak danori eskeinia...

—Nire gorputza egiz dozue janaria
ta nire odola edaria...

—Ogi hau jaten dauana beti da biziko,
hilterik ez dau ikusiko...

*(Gurejauna gorde ondoren, isilunetxo bat egin daiteke, eta oharrak eginez —balegoz— otoitza esanez amaitu).*

## OTOITZA

Jainko Jauna:
Gure handigurea eta prestutasuna
geure probetxurako barik senideen onerako



rak alboratuta. Damuturik autortu daigun gure pekatua:

—Jesus Jauna, zure jarraitzailetzat gizon sutsuak aukeratzen dozuzana. *Erruki, Jauna!*
—Jesus Jauna, gizakion sugarra gorrototik askatu eta maitasun-sugar bihurtzen dozuna. *Kristo, erruki!*
—Jesus Jauna, zure ikasle gartsuak, bulartsuak eta atxaki bakoak nahi gaituzuna. *Erruki, Jauna!*

Goretsi daigun guztion Egile eta Aita/Ama dogun Jainkoa:

| | |
|---|---|
| Jauna, gure Jainkoa: | BEDEINKATUA ZU |
| Zeru-lurren egile: | BEDEINKATUA ZU. |
| Guztien Salbatzaile: | BEDEINKATUA ZU. |
| **Gure Jabe zara-ta:** | **BEDEINKATUA ZU.** |
| Jesus, Jainko-Semea: | BEDEINKATUA ZU. |
| Guregatik hil zara: | BEDEINKATUA ZU. |
| Aitak biztu zaitu-ta: | BEDEINKATUA ZU. |
| **Gure artean zagoz:** | **BEDEINKATUA ZU.** |
| Espiritu Santua: | BEDEINKATUA ZU. |
| Bizien bizigarri: | BEDEINKATUA ZU. |
| Poz-emoile bikaina: | BEDEINKATUA ZU. |
| **Negarretan pozgarri:** | **BEDEINKATUA ZU.** |

## ESKARIAK

† Jainkoaren hitz salbagarri eta su-emoileitik sortu daitezala gure eskariak, uste osoa Jainkoagan jarrita:

—Elizearen alde: bai bere artzainengan, eta baita bere seme-alaba guztiengan ere, gero ta argiago erakutsi daian sinismenaren ondasuna. *Eskatu deiogun Jaunari*.

—Sufritzen dagozan herrialdeen alde: gorrotoak erre ez daizan, eta herrialde aberatsen laguntza ta zorren parkamena lortu daiezan*. Eskatu deiogun Jaunari*.

—Sinismena ospatzeko abaderik ez dauken eliz alkarteen alde: eliz alkarte izateaz jabetu daitezan, eta alkartzea bilatu daien*. Eskatu deiogun Jaunari*.

—Gure ezinetan, une gatxetan eta nekeetan, errudunak eta atxakiak bilatu beharrean, geure erantzun apala eta eskuzabalekoa bilatu daigun*. Eskatu deiogun Jaunari*.

—Santiagoren omenez alkartu garenon alde: Jaunaren jarraitzaile eta haren barri-emoile gartsu izatea bilatu daigun, atxaki, bildur eta lotsa guztien gainetik*. Eskatu deiogun Jaunari*.



## *HITZAREN LITURGIA*

Elizeak jarten deuskuzan Jainkoaren mahai bietako lehenengora hurreratuko gara: HITZAREN MAHAIRA. Arretaz entzun daigun Jainkoak esan gura deuskuna:

**I. Irakurgaia (ApEg 4, 33; 5, 12.27-33; 12,2)**

**Apostoluen Eginetatik**

Egun hareetan, apostoluek adoretsu emoten eben Jesus Jaunaren biztueraren autormena, eta areen eskuz errian mirari ta arrigarri asko egiten ziran. Batzar Nagusiaren aurrera ekarri ebezan apostoluak, eta abade nagusiak onan itandu eutsen: «Ez geuntsuen, bada, zorrotz agindu, Orren izenean ez irakasteko? Zuok, barriz, Jerusalen osoa bete dozue zeuon irakatsiz, eta gizon orren odolaren erantzukizuna geuri ezarri nai deusku-zue».

Pedrok eta apostoluak erantzun eben: «Jaungoikoaren esana egin bear da leenengo, ez gizonena. Gure asaben Jaungoikoak biztu egin eban, zuok abetik dingilizka il zenduen Jesus. Jaungoikoak goratu egin dau bere eskumaz, eta Buruzagi ta Salbatzaille egin, Israeli biotz-barritzea eta pekatuen parkamena emoteko. Geu gara gauza orreen testigu, baita Jaungoikoak bere esana egiten dabenei emoten deutsen Espiritu Santua ere».

Erantzun onek asarre bizitan jarri zituan batzarrekoak, eta apostoluak iltea erabagi eben. Eta Herodes erregeak Joanen anaia zan Santiagori ezpataz samea ebagi eutson.

*Jaunak esana*

**II. Irakurgaia** (2Kor 4, 7-15)

San Paulo apostoluak Korintoarrei

Senideok: Ondasun hau bustinezko ontzitan darabilgu,

† Aitaren eta Semearen eta Espiritu santuaren izenean.
—Amen.

† Egunon, senideok. Santiagoren omenez alkartzen gara eliz alkarte lez, gure Elizbarrutiko zaindaria omentzeko.

Izan gogoan: sarritan zatiketarako erabili izan dogu gure erlijioa, eta "erlijiokeria" bihurtu izan dogu.

Hurreratu gaitezan Jaunagana, eta, bere esanetara jarriz, berak bideratu daizala gure su eta gar guztiak, Santiagorenak bideratu ebazan lez.

## Sarrera-abestia

BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK
Zugana gatoz, Jauna; Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi, grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

Altarean aurkitzen da **kristau alaitasuna** (2).
Emoiguzu zure argi grazi ta maitasuna:
entzun, arren, Jauna.

## Damu-otoitza

† Senideok: gure garra eta egingurea onerako barik sarritan banantzeko, zatiketarako, norbere probetxurako erabilten dogu, Jainkoaren nahie-



bihurtzeko gauza zarala ospatu dogu.
Ez eiguzu itzi etsipenean jausten;
sutu gaizuz, Santiagoren antzera
zure Semearen autorle izan gaitezan
eta senideen ona bilatu daigun beti.
Jesukristo gure Jaunaren bitartez.
—Amen.

† Bedeinka gaizala Jainko ahalguztidunak: Aitak eta Semeak eta Espiritu santuak.
—Amen.

† Goazen Jaunaren bakean.
—Eskerrak Jainkoari.

## Iruzkintxoa

Santiago ez da San Inaziogaz lehian jarri behar dogun santua, bata gailegoena dala eta bestea dala euskaldunona esanaz, haren egunean ez dagoala mezea entzuteko "obligazinorik" amaitzeko. Zelango *txikikerietan* galtzen garan!

Gu ez gara *Jesusen autorle sutsuak*, ezta? *Jesusen biztuereak* —berba hori behin eta barriro erabili arren, batez ere hiletetan— *ez dauka eraginik gure eguneroko bizitzan,* ezta? *Sinismena autortzearren, bizitza galtzeraino* ez ginateke helduko, ezta? Hortxe dago gure jokabidea: apenas lantzen dogu gure sinismena: *ez dogu ebanjelioa irakurteko ohiturarik; ez eta mezatan entzundako irakurgaiak*

*Egin daigun otoitz Jesus gure Jaunak egiten eban lez: horretarako salmoak erabiliz:*

(**otoitz hau jesarrita egin daiteke**)

**ERANTZUN-SALMOA** Sal 125, 1-2ab. 2cd-3. 4-5. 6

**R/. Negarrez erein eben; pozez batuko dabe**




Jaunak Siongo atxilotuak erakartean,
ba gengozan amets-antzean.
Orduan bete jakun ahoa barrez,
gure mihina goratzarrez. R/.

Atzerrietan orduan esan eben:
«Jauna handikiro jokatua dabe».
Gugaz handikiro jokatua da Jauna:
hau da poza daukaguna! R/.

Bihurtu, Jauna, gure zoria,
Negeb-eko erreka-urak bezala.
Malkoz erein baeben,
pozez batuko dabe. R/.

Haruntzakoan hor doaz negarrez,
ereiteko gari-zorroa eroanez.
Pozik etorriko dira honuntzakoan,
gari-azauak eskuetan. R/.



† Gure otoitzak Jesus Jaunak irakatsitakoan indar hartu daian, esan daigun gogotsu, Jesusek berak irakatsitako otoitza:

GURE AITA ZERUETAN ZARANA,
SANTU IZAN BEDI ZURE IZENA,
ETOR BEDI ZURE ERREINUA,
EGIN BEDI ZURE NAHIA
ZERUAN BEZELA LURREAN ERE.
EMOIGUZU GAUR EGUN HONETAKO OGIA,
PARKATU GURE ZORRAK
GEUK ERE GURE ZORDUNEI
PARKATZEN DEUTSEGUN EZKERO
ETA EZ GU TENTALDIRA EROAN
BAINA ATARA GAGIZUZ GATXETIK.

*(Gurejauna altara gainean jarri daiteke. Agurtu ondoren —belauna okertuz edo burua makurtuz—, esan):*

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **ERRUKI, JAUNA**.

—Jaungoikoaren Bildotsa, zeuk kentzen dozu munduko pekatua: **EMOIGUZU BAKEA**.

honenbesteko indarra Jaungoikoagandik dala agertu dadin, eta ez geugandik. Alde guztietatik estutzen gaitue, baina ez itoten; larri gagoz, baina ez etsita; erasopean bai, baina ez eskutik itzita; lurrera botaten gaitue, baina ez hilten. Non-nahi eta beti Jesusen heriotzea daroagu gorputzean, Jesusen bizia ere gure gorputzean agertu dadin.

Bizi garan bitartean, beti heriotzara eroaten gaitue Jesusegaitik; Jesusen bizia ere agertu dadin gure izate hilkor honetan. Holan, gugan heriotzeak dihardu; zuokan, barriz, biziak.

Liburu Santuak onan dino: «Sinistu dot, eta horregaitik berba egin dot». Eta geuk ere sinismen-espiritu bera daukagula, sinisten dogu, eta horregaitik berba egiten dogu; jakinik Jesus Jauna biztu dauanak Berak biztuko gaitula geu ere Jesusegaz, eta Bere ondoan ipiniko, zuekin batera. Hau guzti hau, zuen onerako da; grazidunak ugaritzen dirala, hareen esker ona ere ugariagoa izan dadin, Jaungoikoaren aintzarako.

*Jaunak esana*

## Ebanjelioa

**Aleluia!, Aleluia!, Aleuia!**

**Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik** (Mt 20, 20-28)

Aldi haretan, Zebedeotarren ama urreratu jakon Jesusi bere semeakaz, eta aurrean auspeztu zan, eskabide bat egiteko. Jesusek itandu eutson: «Zer nahi dozu?» Eta berak: «Jesarriazo daizuzala nire seme biok, bata zure eskumatan eta bestea zure ezkerretan, zure erreinuan».



Eta Jesusek: «Ez dakizue zer eskatzen dozuen. Gauza al zaree zuek, Nik edango dodan kaliza edateko?» Hareek: «Bai, ba gara gauza!» Berak orduan: «Nire kaliza edan, bai, edango dozue; baina nire ezker-eskuman jesarte hori ez dago nire eskuetan inori emotea; hori nire Aitak erabagiten dauan hareentzat da.

Beste amarrak, ori entzutean, biziro hasarre jarri ziran anaia biekin. Jesusek, barriz, Beragana batu eta esan eutsen: «Badakizue herrietako agintariek gogor hartzen dabela menpean herria, eta handikiek azpian hartzen dabela. Ez bedi izan holan zuen artean; bestetara baino: zuen artean handi izan nahi dauana, bego zuen zerbitzari; eta zuen artean lehenengo izan nahi dauana, bego zuen menpeko, Gizonaren Semea ere ez da etorri besteen zerbitzuak hartzera, besteak zerbitzera baino, eta bere bizia askoren erospen-saritzat emotera.»

*Jaunak esana*

*(Ondoren DIRU-BATZEA, egin daiteke)*

## *Oharra*

Bada konpromiso bat gure beharrizanei erantzutea, eta gure inguruko behartsuei laguntzea. Horren ezaugarri dogu orain egiten dogun diru-batzea: behartsuaren ondoan gagozela adierazten dogu. Hau Jesusengandik beragandik ikasi dogu.